

# ...ETA BELTZAK

*Hamabiak arte ez da altxatzen eta gosaldu ta gero tabakoaren ke lainoa ezabatzeko leihoa zabaltzen du bost bat minutu. Orduan aprobetxatu behar du aldameneko lagunak zirikatzeko; horman pare bat kolpe jo eta ze berri dago gaur?; ezer ez; ekintzarik ez?; ez; orduan ez dot ezer galdu; irakurtzeko zer daukazu?; nik? ezebez laguntxu, badakizu ez daukala ezebez; eta beste zera horietakoak? hori ez da leiduteko mutil... hori ez da leiduteko!*

*Bazkariaren usainarekin batera zirkuito gehienak martxan jartzen zaizkio, baina oraindik alralentí, zeren eta bazkalondorengo farias piztu arte ez bait du konortea oso-osorik errekuperatzen. Txarrena da siesta txiki bat egin gabe patiora jaitsi behar duela. Jodé, ta ganera hotz honegaz! Aizu!,*



*partidu bat?; ez, ez, ezin dot; nola ezin duzun?; ez, jodé nekatute nau; bat falta da, jarri portero aunkesea: hotz honegaz porteru? zorotute zauz, ala?*

*Labe gainean eseri, kafe doble jarri, eta ipurdia berotzen duen bitartean telebisioari begira paratzen da Cristal ikusteko. Hau da kultura hau, eta ez futbola edo kirol biolento horiek! Zigarroa piztu eta beste kafetxo bat prestatzen ari dela bokia hurbiltzen zaio; Agirre, avise a Ojinaga y a Aberasturi que tienen que ir a comunicar con el abogado. Quién, yo? avisales tu que pa'eso te pagan! no te jode egun osoan potrojorran eta ganera hori, ez dekot beste zereginik...; eh! oiga, a ver si cuida esos modales!...; que te vayas a Ampuero!!. Patiotik iskanbila entzun ahala leihoetara hurbiltzen dira lagunak; zer nahi dik horrek ba?; ezebez laguntxu, ezebez, mozkortute dau.*

*Luze egiten zaizkio askotan patioko ordu biak, bereziki besteek futbolean dihardutenean, orduan ez dauka txaskarriloak kontatzeko aukerarik eta partidua bukatu bezain laster beti baten bat harrapatu behar; ze, eskubete berba noz egin behar dogu, ba?; zer ba?; joder zer! abruxidute nau; zer zaude?; a-bra-xi-du-teeee; eta hori zer da?; eztakizu zer den?, ba... hori, eztakit zer egin, jodé abruxidute; ah!, aburridute orduan?; ez, aburridute ez, hori kriston erderakada da, gure herrian abruxidute esaten dogu «abruxidute nau ta atxatara noa lapatan»... zuek zelan diñozue ba?; guk aspertute; bai, zuek fiñak zarie-ta!*

*Dutxak zabaltzean han egoten da, beti lehenengo lerroan ur beroa bukatu baino lehen dutxatu ahal izateko, eta urak ez badu erretzen ez da dutxatuko, ez.*

*Berak dioenez sekulako alergia bait dio ur epel-hotzari. Ni tropikala naz, mutil, eta ganera egunero dutxatzea ez da ona, barre egin baina nik leidute dekot Integral baten gorputzeko koipea ona dala azalarentzat; ba, gaur epela dago; zuretzat, lagun, zuretzat, ganera katarro apu bat dekot be...*

*Patiotik igo ondoren siesta txikia egiten du afalordurarteko hotza ahalik eta hoberen gainditzeko. Derrigorrez egin behar «Tirillas» putakumeak ez duelako zazpirak arte kalefazioa pizten. Gero kalefazioaren beroarekin hobetoxeago egon daiteke ohetik kanpo; hala ere txaboloa epeldu arte anoraka jarrita, jakina.*

*Zalantzarik gabe ordu txarrenak gauekoak izaten dira. Neguan egunak motzagoak dira eta afalordurako iluntasuna nagusi. Lagun guztiek leihoa txapatzen dute kalefazioaren beroa gordetzeko eta ez dago ondokoarekin leihotik hitzegiterik.*

*Beraz, irratian musika jarri, kartaren bat idatzi; eskerrak bi besterik ez dekogun, ostantzen zelako putada!; eta hamaiketarako ohera; HORA 25ko paridak entzuteko leku onena da-ta. Jodé! laster koltxoi berria eskatu beharko dot. Je, je...!!, hau ezpadoskue kentzen gerra hau txupaute dau!.*



# krin-krin-kron... plas!

*(Ateak irekitzen eta zu ohean? ah, noski, zu barruan gelditzen zara. Eta pozik, eh? holako hotzaz hobe ohe barruan, goxo-goxo, patioan bueltaka baino. Begiratu zelango zoriontasun aurpegia daukazun, eh? laster ate hotsak amaituko dira eta hala! lanera berriz, lo egitera. Beste krin-krin-kron... plas! batzu eta funtzionaria igerriko duzu nola gelditzen den momentu batez bere zerrendan kontsultatzeko eta, begiratu ondoren, aurrera jarraituko du ondoko azken hiru ateak irekitzera. Uhmmm, ia laster pasatzen den...)*

*Krin-krin-kron... plas!...*
*KRIN-KRIN-KRON... PLAS!...*
*Krin-krin-kron... plas!...*

*(Eh? zelan KRIN-KRIN-KRON... PLAS! Zarata hori ez daukazu prozesatuta. Zer esan nahi du? Ireki begi bat gutxienez, ez? ...Eh! atea irekita dago!)*

*— «Itxi ate hori!».*

*(Baina... atea irekita badago esan gura du funtzionariak bere zerrenda ez duela begiratu eta, orduan, esan gura du... Oh, ez, ez! ...Esan gura du gaur dagoela...).*

# TRAUSKIL

*—Uniforme multiformedun kartzeleroa—*

*(Azkar, gora! alerta gorria goiz osoan! Erantatu! Gaur zentzu guztiak adi eduki beharko dira eta. Lehenengo lana bera dela konprobatzea izango da).*

*Baina ez da lan erreza jende asko dago eta. Normalean uniformeagatik jakin liteke, baina Trauskilen uniformea multiformea da, kamaleoiena modukoa baina hilabetero aldatzen dena kasu honetan, zeren, gutxi gora-behera, emazteak hilabetero aldatzen dio arropa, kanpokoa behintzat (eta hau azaleko artikulua denez ez gara barnekotasunetan sartuko), eta arropa horixe da lanean ere darabilena. Zaila da, beraz, jakitea. Prakak grisak izaten dira, gehien bat, —kamuflaiakoak omen— eta gerritik gorakoa da aldatzen dena.*

*(Bai, bera da... hile honetan botoidun jertse berdea dakar).*

*Trauskil zerbitzuan dagoenean egunean zehar zer beharko den pentsatu behar da geldiro eta datorren lehen aldian aprobetxatu dena eskatzeko, zeren agian ikusteko azken aukera izango da ordu askotan.*

*(Errelaxatu, beraz. Adimena fresko! Leihoa ireki edo... ...Brrr! hauxe hotza, itxi leiho hori! Flexio batzu egin, bat-bi, bat-bi,... Bueno, nahikoa, orain pentsatu behar duzu*





# ...ETA BELTZAK

*zer eskatu behar diozun gosariarekin datozenean. Gaur, kasualitatea, errekadu asko daukazu, ez? posta arduradunarekin egotea heldu ez zaizun gutun hori erreklamatzeko; maisu-maistrekin hurrengo esaminarena konpontzeko... eta zerbait gehiago zegoen, baina... Berdin da, badatoz eta...).*

*— «Nork ireki dizu atea?» galdetzen du.*

*— «Nork irekiko du, ba...».*

*(Tira, aprobetxatu kafea botatzen ari direla zeure errekaduak emateko...).*

*— «Eh... posta arduradunarekin egon nahi dut eta maisu edo maistra batekin ere. Esan etortzeko».*

*— «Bueno, ikusiko dugu, ia hemendik dauden...» erantzuten du.*

*Kontuz! Trauskilek «ia hemendik dauden» esatea arriskutsua da. Horrek esan nahi du besteak bere ondotik pasatzen badira esan egingo diela, gogoratzen bada, baina ez da bera bilatzera joango. Kontutan hartu behar da, gainera, Trauskilek ederto menperatzen duela bere berezitasuna den «guadianismoa», hau da, lehen eta azken orduetan ikusgarri egotea, tartean leku ezezagunen baten egongo delarik, tabernan inguruan, beti «zerbait» egiten, noski. Trauskilek, orduan, «ikusiko dugu» dioenean erreakzionatu egin behar da eta errekadua lotu.*

*(Tira, mozoloturik zaude, ala? Zerbait esan, ez utzi horrela joaten...).*

*— «Eeeeh... baina beharrezkoa dut horiek etortzea, eh? Posta arduradunari lau bider deitu diot aste honetan eta eskolakoa gaur bertan konpondu behar dut, bestela epea pasatuko zait».*

*— «Je, je,... bai, bai, ikusiko dugu, hemendik badaude...».*

*(Tira, kokoloori, zeozer gehiago esan, ekin... esan zerbait! ...berandu da, atea itxi du... Bueno, ia suerte ona dagoen orain eta behintzat maisu... Errotuladoreak! Errotuladoreak pasatu behar zenizkion Klaudiori marrazki bat egiteko eta gaurko behar zituen, bihar bisitan ateratzeko. Baina nola egingo duzu orain... Medikua datorrenean! Horixe! Laster etorri behar du, gainera).*

*Tok, tok,...*

*(Ah, badator...)*

*— Kaixo, mutil, zelan zaude gaur? Medikua naiz. Parkatu lehiatilatik hitz egitea, baina ez dut aurkitu funtzionaria. Behean egon naiz hamar bat minututan itxaroten eta inor agertzen ez zenez honantxe etorri naiz ondo egongo zinelakoan... Baina, zer pasatzen zaizu? Zurbil gelditu zara. Ondo zaude?*

*— «...Bai, bai,... momentu bateko gauza izan da. Ez dakit zer gertatu zaidan, baina ondo nago, lasai. Bide batez, beherantza zoazela funtzionaria ikusten baduzu, esan etortzeko».*

*— «Halaxe egingo dut, baina zaila ikusten dut inor aurkitzea. Agur».*

*(Lasai egon, oraindik hamarrak dira. Hamaiketan garbiketakoa ibiliko dira ingurutik eta funtzionaria abisatzeko esan ahal izango diezu. Edo bestela hamabietan deitzen hasi...).*

*...*

*(Ordu oso bat deika eta inor ez dator. Laster bazkaria... hauxe umorea, goiz osoan haserre eta ezer egin barik... Hara! badatoz bazkariarekin...).*

*— «Abisatu diezu posta arduradun eta maisu edo maistrari?».*

*— «Uf, ez ditut goiz osoan ikusi».*

*— «Eta zergatik ez zara joan beraiengana abisatzera? Bazenekien presa nuela, goiz osoan egon naiz deika, ez duzu entzun?».*

*— «Uf, lan handia izan dut gaur. Lasai egon, bihar goizean sartuko den funtzionariari gogoratu. Lasai egon».*

*Bai. Lasai egotea da jarrerarik egokiena Trauskil zerbitzuan dagoenean. Trauskil, izatez, ez da ez txarra ez ona. Esan dezagun elementu neutroa dela, ezertarako ere mugitzen ez denez, ez dizu errekadurik egingo, baina zeure kontra ezer berezirik ere ez du egingo. Egia esan, Trauskilek zutaz eta preso guztietaz pasatzen du. Lan gehiegi dauka presoetaz arduratzeko moduan. Berak aulki erosoa behar du orduak emateko, baina gela izkuturen baten dagoen aulkia, basua beteta daukala, beharrezko duen lasaitasuna bilatzeko.*

*Trauskil bat aurkitzen baduzu, adiskide, berdin egin, lasaitu eta inor ez dagoela pentsatu.*

**Boni eta Klaudio.**





# TURISMO EGINGO DIAGU BEHINTZAT

*Krik... krak...!! Giltza hotsa sentitu zuen bapatean zerraila barruan. Oso lasai zegoen ohe gainean etzanda, aurikularrak jarrita eta Tracy Chapman-en ahotsaz gozatzen, «...I'd like to give Mr. President my honest regards for disregarding me...», baina zarata hura entzun ahala zirrara batek jo zion gorputz osoa goitik behera. Betiko hots nazkagarria; hiru urte zeraman barruan eta oraindik komisaldegiko inpresio latz bera ekartzen zion.*

*KLONK...!!*

*Bokerak eskubialdera desplazatu zuen morroiloa ohizko bortizkeriaz eta ezer esan gabe ate erdian paratu zen.*

*Bihotzeko taupadak gero eta erritmo bizkorrago markatzen zuten eta bazekien ordu hartan ez zela eguneroko gauza .Gaueko hamarrak aspaldian igaroak ziren eta zerbait arraroa somatzen zuen. Barneko urduritasuna disimulatuz aurikularrak kendu zituen eta patxadazko imajina eman nahiean edo, astiro-astiro ohetik jaiki zen kartzeleroaren aurpegira so egiten.*

*— Zure gauzak presta itzazu... kondukzioa daukazu.*

*— Nora?*

*— Ez dakit.*

*— Eta ezin duzu galdetu?*

*—Ez. Gero enteratuko zara... Ah! eta azkar ibili Guardia Zibila zai dago eta!*

*— Ba, esaiozu Guardia Zibilari presa gutxiago edukitzeko, zeren gauza guztiak prestatzeko ordubete beharko dut gutxienez.*

*«Beti bezala azken momentuko presak, seguraski gaur goizean bazekiten kondukzioa neukala eta ez didate ezer esan... bada, jai dute!»*

*KLONK...!! Krik... krak...!!*

*Morroiloa berriro, gerra sikologikoaren harma.*

*— Jo ezak gogorrago!! ...espetxea apurtu arte!!*

*Ohizko erantzuna, tiroa itzultzeko asmoz. Kartzelero gehienek indarrez ixten zuten atea beti, ahalik eta hots handiena egin nahiean, eta barneko erantzuna entzun beharra zeukaten zerrailaren oihartzun modura. Aspaldiko errituala zen eta salbuespen bakarrak kartzelero berriak —akademiatik irten berriak- izaten ziren gehienetan.*

*Bihotz taupaden jaitsialdiarekin batera makina bat detaile hasi zen buruan metatzen era automatiko batera, bere baitako ordenagailua martxan jarria izan balitz bezala «familiari abisatu, Koldoren liburuak aparte utzi,... joder! beti bezala ustekabean harrapatu naute eta praka eta alkondara horiek oraindik bustita, idazmakina ez ahaztu gero!... bueno, nondik hasi?».*

*Pixkat lasaiago zegoen, baina honelako egoeratan beti lehortzen zitzaion eztarria. Ez zekien zer-nolako erreakzio organikoa izango zitzaion eztarria. Ez zekien zer-nolako erreakzio organikoa izango zen baina eztarria lehor-lehorra geratzen zitzaion beti, eta txarrena ur asko edatea zen; «batek daki norako kondukzioa izango den, zenbat ordu jaula nazkagarri horretan sartuta, esposatuta, eta deskuidatzen bazara txis egin ahal gabe... badaezpada txis egin beharko dut irten baino lehen..., joder! eskerrak goizean kaka egin dudan..., ez dut ahaztu behar plastikozko poltsa, ze... txoferrak presa baldin badauka... agur afaria!...».*

*Bapatean goiko literara igon, leihoa zabaldu eta moduloko beste puntuan zegoen lagunari deitu egin zion, indarrez baina hitzak ondo bereiztuz, bestela ez zegoen ezer ulertzerik ia berrogeitamar metrotara bait zegoen:*

*— Kooool...dooooo!!*

*Hamar bat segundu itxaron, baina... keba, ez zuen erantzuten.*

*«Kabroi horrek seguraski leihoa itxita edukiko du,... edo musika entzuten egongo da,... edo komunean...».*

*— Kooool...dooooo!!*

*— Baaaaii!!*

*— Aizaaak; banioak... kunda zeukat!!*

*— Zer daukak?*

*— Kuuuuun..daaaa!!*



# ...ETA BELTZAK



*—Noooraaa?*

*—Ez...ta...ki...at!!*

*—O...raaain?*

*—Baaaai!!*

*Zer esan jakin gabe geratu zen Koldo, duela minutu erdirarte El Jueves irakurtzen ari zen, Makiren istorioekin barrez lehertzen, eta bapatean irribarre zabal hura mila zatitan hautsi zitzaion, barroteen aurka ezereztu zelarik. Dena den inertzia ezezagun batek bultzatuta erantzun zion:*

*—Nahi... ba... duk... bihar... goizean... telegrama... bidaliko... diat... hire... etxera!!*

*—Bi...har... zeeerrr?*

*— Te...le...gra...ma... bi...da...li...ko... diii...aaat... hi...re... eee...txe...raaa...!!*

*— Baaa...leee!! Ai...zaaak... geee...rooo...hi...re... txa...bo...lo...tik... paaa...saaa... kooo... naaauk... iiidaz...maaa...kiii...naaa... har...tze...ko...!!*

*—Ooon...dooo...!! Geee..rooo...arr...teee...!!*

*—Baaaaai...!!*

*Poltsak prestatzea ez zen lan ezatseginena: txarrena zen kondukzio batek dakartzan ezegonkortasuna eta urduritasuna destino berrira heldu arte, eta bertako bizimodura egokitu arte. Arautegi Penitentziarioa bakarra izan arren espetxe bakoitzak bere erara interpretatzen eta egokitzen du. Sarrerako katxeoak, bizi-baldintzak, patio ordutegiak, bisita egunak, kartzeleroen jarrerak, ikasteko oztopoak, janariak, zeldaren ezaugarriak, eta abar luze batek osatzen zuten kezka berrien desfilea; eta izarak, arropa, liburuak eta gainontzekoak makutoetan sartzen zituen bitartean kezka horietan kontzentraturik zegoen.*

*Ez zuen konzentrazioa horretan asko iraun baina: laster batean giltzaren hots metalikoak uneko errealitatera erakarri bait zuen.*

*— Oraindik ez al duzu bukatu?*

*— Esan dizut lehen gutxienez ordubete beharko nuela.*

*Atean zegoen berriz jaka urdinduna, bere plastikozko guanteekin eta korbata alkondarari atxikitzeko espainiar bandera zekuan buruorratz urreztatuarekin. Ez zion presoari so egiten zelda barrukoari baizik; oraindik zenbat falta zitzaion kalkulatu nahiean.*

*— Bueno; lehenbaitlehen buka ezazu, Guardi Zibilari pazientzia bukatzen ari zaio eta!*

*— Ba, esaiezu estankoan pakete oso bat erosteko...*

*— Zuk txantxetan hartu... gero beraiekin joan beharko duzu.*

*— Eta zer egingo didate? ...esposak estutuago jarri? ...ohituta nago honez gero.*

*— Zenbat denbora behar duzu oraindik?*

*— Ordu laurden bat gutxienez.*

*— Konforme; hemendik ordu laurden batera itzuliko naiz. «Joder! Ze kantsagarri den tipo hau!... aber, hormako argazkiak, postalak... aldizkari zahar hauek hemen utziko ditut... garbitzeko gauzak ez ditut eramango, bestela pisu hgehiegi, gomazko guanteak*





*eta estropajo bakarrik... auskalo nola egongo den hurrengo zelda...».*

*Berehala bukatu zuen eta txis egin ondoren plastikozko poltsa galtzetako poltsikoan sartu zuen. Azken errepasoa eman zion zeldari zerbait ahaztuta uzten zuen ikusteko, eta horretan zegoela atea zabaldu zioten berriro.*

*— Hasi zaitez poltsak jeisten eta goazen zentrora.*

*— Lehenago liburu hauek eman behar dizkiot lagunari.*

*— Emaizkidazu niri eta nik pasatuko dizkiot.*

*— Baina berak idazmakina eta beste liburu batzu eman behar dizkit niri...*

*— Bueno, baina azkar eh?... beranduegi egin zaigu eta.*

*— Egin zaigu ez! Berandu zen esan didazuenean, zergatik ez didate esan arratsaldeko guardiakoek?...*

*Moduloko eskilarak igon zituzten eta goiko galeriako pasilo zabalaren bukaeran, azkenaurreko zelda, zegoen Koldo. Ohi lez zartada itzela eman zion morroiloari eta beheko literarik altxatu zen Koldo.*

*— Banihoak mutiltxu...*

*Kriston kankailua zen; ia metro eta larogeitamarreko gizona. Txima luze haiekin eta bizarrarekin basajauna ematen zuen, baina aurrez aurre zeudenean beti «mutiltxu» deitzen zion garaiera ezberdintasunari garrantzia kendu nahiean edo.*

*— Esan nian ez? Lehengo egungo bronka ikusi ta gero papertxo guztiak hituen: nik ere eztakiat zenbat iraunduko dudan...*

*— Berdin duk; hemen edo lekutakoan eutsiko diagu, ez?... Ba, hemen dauzkak liburuak... zera. idazmakinarekin amaitu al duk? ...bestela familiari atera eta bidaliko zidatek...*

*— Ez, ez, bukatu diat: gainera hik beharko duk sekulako kazetaria egin behar haiz eta!*

*— Bai; hire kontuak kontatzeko, ezta?*

*— Bueno laguntxu, zakurra zai daukak... muxu bat... eta ondo zainduzak hire burua!*

*— Bai, bai... trankil egon... idatziko diat... ah! eta ez ahaztuk bihar telegrama.*

*— Ez, ez; prestatu zeukat... bueno laguntxu... ikusi arte!*

*— Ikusi arte, bai... eta ondo segi!*

*Elkarri pare bat muxu eman ondoren idazmakina hartu eta keinu bat egin zion begiarekin jaka urdindunak atea itxi baino lehen.*

*«Kaguenlaputa... auskalo noiz ikusiko dudan berriz...».*

*Hiru bidai egin behar izan zituan poltsa guztiak furgoiraino eramateko eta esposatu ta katxeatu baino lehen zentrora eraman zuten espedientean eta bidai-orrian hatza ipintzeko. Orduan profitatu zuen destino ikusteko: Alicante-Foncalent.*

*«Costa del Sol-era, hi... ez zegok gaizki... turismoa egingo diagu behintzat!!».*

**Boni eta Klaudio**




*(Cualquier parecido con la realidad no es pura ficción)*

*Ilustrísimo Señor:*

*En relación a los informes solicitados por la Comisión Especial de esa Dirección General sobre los presos pertenecientes a bandas armadas y organizaciones terroristas recluidos en esta prisión de X, se apunta lo siguiente:*

*•Que siguiendo las directrices emanadas de ese Centro Directivo, se procedió hace varios meses a la separación en módulos diferentes de los internos, implantándose rigurosos controles y tenaces vigilancias tendentes a su incomunicación total. Igualmente, y con periodicidad regular, se les está sometiendo a continuos cambios de módulo con el fin de evitar su asentamiento y estabilidad.*

*• Que así mismo, y tomando como referencia los preceptivos informes individualizados de la Junta de Observación y Tratamiento sobre el comportamiento, personalidad y circunstancias individuales de cada interno, se procedió al incremento de la presión sobre todos y cada uno de ellos, llevándolos a situaciones límite y ofreciéndoles, como única salida, la aceptación de los beneficios penitenciarios recogidos en la vigente Ley Penitenciaria.*

*Además de dieciseis meses de la aplicación de ese tratamiento, los resultados obtenidos han sido los siguientes:*

*Pese a constatar respuestas diferenciadas por parte de los internos, actuando cada uno de ellos en función de su personalidad, su línea de actuación general continúa siendo homogénea.*

*La disposición arquitectónica de la prisión, la escasez de personal y las simpatías que los etarras despiertan entre los otros presos, especialmente entre los más nocivos y conflictivos, hacen que nuestros sistemas de vigilancia sean burlados una y otra vez, incrementándose de manera escandalosa el número de notas y mensajes entre ellos, a juzgar por el contenido de comunicaciones que han logrado ser interceptadas.*

*Las expectativas que se venían manteniendo en el sentido de que una vez separados e individualizados, los presos terroristas acabarían por desmarcarse de la organización y aceptarían el programa ofrecido por la Institución Penitenciaria, no se corresponde con los logros obtenidos. No sólo no se han desgajado del grupo, sino que realizan continuos esfuerzos para comunicarse entre ellos y estar juntos.*

*Siempre que se les ha sugerido la posibilidad de reinsertarse, han respondido con reacciones de tajante rechazo, pétreo silencio o desdén, cuando no descarada mofa.*

*La tozudez manifestada por ellos en su creencia de que son presos políticos y de que la solución a sus problemas penitenciarios vendrá únicamente como fruto de una negociación entre la organización terrorista ETA y el Gobierno, hace inútil nuestra labor disuasoria y despolitizadora.*

*En definitiva, su comportamiento y actitud no responde a parámetros normales, sino que rayan en el mesianismo y/o la martiriología, pues se nos hace imposible explicar racionalmente la persistencia en sus posturas y su gran capacidad de resistencia.*

*En virtud de todo ello, solicitamos a esa Dirección General el envío de nuevas instrucciones y medidas correctivas que, con la diligencia habitual, serán llevadas a la práctica.*

*Atentamente,*
*El Director*

# ¡QUE MAL HUELES TIO!

*Presook orma beste aldetik hain gaude urruti ezen askatasun ideiala benetakoa bihurtzen bait zaigu. Gure «utopia» zeruruntz begira hortxe dagoela pentsatzen dugu imajinazioaren begietan aspirazio guztiak bilduaz. Bildur langak zeharkatzea da sarri askotan bizitzaren aldeko lurrak zapaltzeak eskatzen duena.*

*Preso eraman gintuztenean askatasuna zegoela esan ziguten Euskal Herriaren nahimenaren ukatzaileek, eta «demokrazia» espainola-ri darion bestearen ukazio premisa ez onartzeagatik, zigorpean gaituzu.*

*Politikan diharduten gure «errepresentatzaile etikodunei», gertakariek azaltzen dutenez, egiazko printzipio demokratikoak ez bide zaizkie interesatzen, gaiztoenik zintzoenak eurak bait dira. Baina ez gaitezen harritu bestalde, norberaren erabakiak eta iharduteak ordezkatzerik ez daukatelako!*

*Herri memoriak dakarkigun konpromezua da euskaldun izatea, zaindu eta iraunerazi egin behar duguna, hamaika moduez adieraz dezakegun izate horrekiko sentimendua sorturik, ala berezkotasuna galtzea da geratzen zaigun beste kidea, betirako kontzientzia txarrarekin bizi behar dugularik, hortaz. Azken batean subirotasuna da, borondate libreek beharrezko duten osotasuna, gizon eta emakumeak, herri eta nazioartekoak libre bizi gaitezen. Bestelakoa da izpiritu ahularen erretolika. Orain eta hemen, kartzelatik isladatzen den errealitate berberara doazen ikuspegi batzu agertzera ausartuko nauzu.*

## Ihesaldia

*Errealitate gorriari ihes egiten diona ez da gartzelatik eskapatu ohi dena, ez da izaten kateak hausteko asmoa duena. Aurre-aurrean daukagun errealitateari ihes egiteak droga baten efektuak dirauen uneak baino ez du balio, berriz «zera»ra itzuliz.*

*Preso komun batek hala esaten zidan «aguantaezina den mikromundu higuingarri hau minutu bat kentzeagatik edozer gauza emango nuke, inguratzen nauen oro gaindiezina iruditzen zait eta». Deritzogun ihesaldi hura izango da beraz, nagoen errealitatetik hanka egiteko irterarik gabeko bidea zeren beti bertara itzuli beharrean aurkituko bait naiz, ezta minutu bat ere ez diot kenduko, are txarrago, errealitatea nik eragiteke bilakatua izango da, nere aldetik inolako kontrajartzerik topatu gabe, alegia. Berriz ere alienazioa, berriz moldagaitz bihurturiko errealitatearen aurrean nagoelarik. Kaput! Norberarena bada errealitatea, hauxe da errealitatea!*

## ¡Qué mal hueles tío!

*«Zerbait gaizki egin ote dudan... jende gehienak maite nauelako», norbaitek zioten.*

*Nigandik jende guztiak alde egiten du hitz batere gurutzatu gabe. Zergatik ote da?... usainagatik...*

*Harrizko banku batean liburu bat irakurtzen nengoela eta bat batean nere ondoan eseri zen mutil bati kiratsa ikaragarrizkoa zerion. Sudurretik sartu erraietaraino joanez nitaz jabetzen hasi zen usaina. Bisitatik zetorren mutil honek, modulora iristean, familiak utzitako paketea arakatzeari ekin zion. Txandal urdin bat, txorizua, loretsu praka motz pare bat, gazta, txankletak eta zeredozer gehiago aurkitu ahala ateratzen joaten zen. Berehala erazten ihardun zuen soinean zeramana, tergalezko praka, atorra, zapatak eta galtzerdiak beren lurrina bere inguruan aideatzen zen aldi berean, ene eztarrian askatasunaren karraxia emendatuz joateko, lehertzear egon arte. Hori nazka!*



Gorputz bakoitzak bere usaina omen du, garbitzen ez badugu usain hori txarra izanik. Era berean, preso kolektibo bat ezaugarritzen duen giro usaina hilotzarena da, denboran zehar oihu, jasate, errepresioa girotzen joaten den gartzelaren errealitatearen usaina. Hura nazka! Egia den arren, honetatik jaten dutela hainbat funtzionarioak eta mandatarik, usain izurritsu honetatik elikatzen da sistima oso bat, hatsezko eleak gero ekoizteko eta mezu moduan herriari helerazten diona bera delarik. Ez da posible! Hitz usteldu horiek dira ustegabe kutsatzen gaituztenak, agian horregatik, usain txarra darion sasi-demokrazia espainolari jende askoren txalo, botu, onarpena... datxezkio.

¡Que mal hueles tío! Nik usain hori ez dut dagoeneko aguantatzen! Baina errealitate bat da gure gizartean usain higuingarrri hori aguantatzen dela, batzuk gainera sakon arnasartuz, eta gustora dirudite.

## Askatasunaren galtzerdiak

*Patioan hemendik hara paseiatzen ari nintzeneko egun batean preso ezagun bat hurbildu zitzaidan, horrela biok solasaldi batean murgiltzeko. Komunikatzerik beti badago zeredozer, beti daukagu askatasunaren gabeziak adierazi beharra, bakardadearen minak kanporatzeko era on bat.*

*Pausu arinez abiatuz, mutil honek kontatzeari ekin zion nola aurreko batean, kartzelatik kaleratu zeneko egun hartan, estrenaitu zituen galtzerdiek oinetatik kendu gabe sei hilabete iraun zuten, eta, harez gero, higadurik eta zuloz beterik ukan zituenean, erlikia batzu bailiran, bere etxean kaixa batean dituen preziaturiko gauza guztiekin egokituak gorde zituen. Ordudanik askatasunaren galtzerdi horiek sekulako balioa hartu zuten, erosi eta saldu ezin den preziorik gabeko balioa, alegia.*

*Nolanahi ere, horixe da gure askatasunaren errealitatea, nonbait gizaki guztiok ulertzen duguna, ezeren truke galdu edo hurrupatzen utzi ezin dugun askatasuna, bera delarik, munduan ibiltzeko jantzita eraman behar ditugun galtzerdiak, desiratzen dugun geure buruak determinatzeko askatasuna bera bestelarik ez bait da.*

*Askatasun horren subjektuak norbera eta denok bagara, gizabanako bezala zein kolektibo bezala, orduan, zer demontre egiten du Euskal Herriak bere askatasunik gabe? eta gu, ondorioz, hemen giltzapeturik zertan gabiltza?*

*Hasiera-ra itzuli gara zikloa itxiz, hots, errealitate bat da gure herriaren askatasun eza, eta errealitate hori aldatu nahirik, askatasunarena ekartzeko, zigorpean gaituzu. Hura nazka!*

# HURA NAZKA!

# alcalá, cárcel de extermin

Alcalá, módulo 6 de preventivos. No sé que palabras utilizar para que comprendierais bien como es este módulo. En primer lugar decir que si no se ha estado nunca aquí dentro es difícil comprender toda la dimensión de las palabras. Se puede decir que la celda es blanca y verde, y vosotros os imaginareis una pequeña habitación blanca y verde. Pero la verdadera intención de esas palabras, de esos colores, son una mezcla de intenciones subyacentes, encaminadas a hacerte perder el control de los nervios y que te sientas agobiado. Por lo tanto cuando yo digo blanco y verde, quiero decir que es el blanco y verde de una intención estudiada.

Tiene una estrecha ventana al lado de una mesa también verde. Cuando levantas la vista e intentas mirar por ella, tus ojos salen rebotados por el duro choque contra una pared. Es un paisaje frío, brutal, basto como el material con el que está hecho, puesto a propósito para hacerte recordar que estás en un módulo de aislamiento. Hasta aconstumbrarte a ella la sensación de agobio es machacante, cuando te aconstumbras el agobio es un hecho real.

La celda tiene un espacio de unos cuatro metros y medio por 1,70 m., aproximadamente; una cama de frío cemento, y digo frío porque no veaís como se siente ahora que estamos en invierno. Casi en el centro de la celda tenemos un lavabo y un espejo en el que reafirmamos cada mañana nuestra convicción de seguir aguantando el duro aislamiento.

Las normas que rigen estos módulos son duras; no se puede hablar por las ventanas; no se puede pasar nada a otro compañero; cuando se sale al patio no se puede hablar con los compañeros que están en las celdas, etc. En las puertas de las celdas están expuestas las normas tanto prohibitivas como de cumplimiento. Si se tuviesen que cumplir todas, como indica el papel, nos volveríamos locos.




Como en todos los sitios siempre hay funcionarios que las hacen más flexibles y otros que se atienen al pié de la letra del reglamento. Este tipo de comportamiento es arbitrario y se hace para que cojas una rutina y te puedas acomodar. Tenemos al día dos horas de patio, una a la mañana y otra a la tarde. Pues bien, raro es el día en que nos sacan al patio a la misma hora, y esto te rompe los esquemas. Es decir, si tienes constumbre de hacer footing y han visto que la hora que más te agrada es las diez de la mañana, un día te sacarán a las diez, otro a las once y el siguiente a las doce. La cuestión es la de romper todo intento de organizarte. Por la tarde sucede lo mismo.

El patio es más pequeño que el del resto de los módulos, y de la forma que está construido se asemeja a un cajón, idea esta que te transmite en cuanto sales a él. Este tipo de patio solo lo tienen tres módulos, el cinco, seis y siete-. Esta denominación ha cambiado hace poco, ya que antes se llamaban aislamiento 1, aislamiento 2 y aislamiento 3.

El módulo 7 -antes aislamiento 3- es el destinado a cumplir las sanciones y es el de régimen más duro, con un aislamiento total. Son 23 horas de celda y una de patio. En este módulo las puertas se abren automáticamente desde un centro de control, de esta forma nunca estás en contacto ni con el funcionario ni con otros presos. Se elimina así el que se pueda coger al carcelero y que se produzca un motín. La comida te la dan por una pequeña rendija que se abre desde el exterior, es como si dieran de comer a un animal metido en su jaula. El lavabo y el water son de acero inoxidable para que no puedas prenderle fuego. Esto es debido a que en el último motín que se produjo, le dieron fuego a los txabolos. El silencio debe de ser total, es decir, no se puede hablar, cantar ni reir -para esto último seguramente no quedarán ganas-.

Después de pasar una temporada en un módulo como este, sólo te queda la voluntad de resistir en clave de resistencia política. Los presos sociales que salen de aquí, salen hechos polvo psíquicamente debido al trato que se les dispensa. A la menor oportunidad te ganas una paliza. No es extraño que se salga hecho polvo de ahí.

Hace cosa de un mes se ahorcó un chaval de Donosti con el que habíamos convivido una temporada en el módulo 5. Este chaval era un preso social con doce años de condena y con graves transtornos psíquicos. Con el cuadro clínico que tenía, mandarle a un módulo como ese, era mandarle a la muerte. Una mañana, en el recuento de las ocho, apareció ahorcado. Su madre, ingresada en el Psiquíatrico de Santa Agüeda -Arrasate- lo había hecho un poco antes. Este suceso nos causo una gran impresión ya que, a pesar de no ser compañero nuestro, era vasco y esto nos identificaba. Todas las mañanas nos saludaba con un «Gora Euskadi Askatuta!», que nos hacía esbozar la primera sonrisa del día. No sé si algún amigo o familiar leerá esta pequeña crónica, si así es, que sepa que mientras estuvo con nosotros le ayudamos en lo que pudimos y no le faltó de nada.

Bueno, volviendo al hilo descriptivo me situo de nuevo en el módulo 6 de preventivos -o antiguo aislamiento 2-. Aquí el régimen es un poco más suave que en el módulo 7, a pesar de que sigue siendo duro. El aislamiento no es tan férreo y el tiempo de patio se amplia a dos horas; o sea, 22 horas de celda y dos de patio. En este módulo estamos en estos momentos diez compañeros, pero la cifra varia, ya que aquí se viene, normalmente, por causa de juicios. Debido a esta condición, lo mismo podemos estar diez que dos.

Hace unos días nos enteramos que había ingreso de compañeros. A este módulo trajeron a uno, y este nos comentó que a Unai -el compañero de Iparralde- le habían llevado al módulo 7, es decir, a aislamiento total. Por la noche conseguimos comunicar con él por medio de gritos y nos hizo saber que la actitud de los carceleros con él era violenta y que no le habían dejado pasar casi nada de sus objetos personales. Ni lectura, ni objetos de escritura, ni radio,...

Nos comunicó también que se había puesto en huelga de hambre, ya que al no tener sanciones su lugar no era ese módulo. Rápidamente convocamos una pequeña batzarra y salimos a la ventana para tomar una resolución. La decisión fue entrar en huelga de hambre si para el día siguiente no se le traía a Unai a este módulo. Esta decisión fue remitida al módulo 5, que también adoptó esta postura. Esto sucedía a las diez de la noche.

Por la mañana, reclamamos la presencia del Jefe de Servicios, a quien le hicimos saber cual era nuestra postura. Después de un tira y afloja nos dijo que iba a estar con el Director de la cárcel a ver que se podía hacer. A eso de las once de la mañana Unai aparecía por el módulo. Todos nos alegramos porque sabíamos que venía de pasar ocho

meses de aislamiento en Herrera de la Mancha. Y no es que este módulo sea una ganga, ¡que va!, pero es muy bonito escuchar la voz de un compañero, ver su sonrisa y apreciar el calor solidario.

Una vez más, la unión y la convicción de hacer algo por un compañero había podido con las intenciones de la Dirección de la cárcel, que no eran otras que las de mantener en aislamiento total a Unai.

El significado de que Unai esté con nosotros es muy importante. Es el reflejo de que tanto Iparralde como Hegoalde son componenetes de una misma nación. Evidenciamos que somos miembros de una misma organización, con ramificaciones en los dos lados de la muga. A pesar de que el enemigo pretenda hacer diferenciación entre él -para el enemigo francésy nosotros -para el enemigo español-, está se rompe en la práctica cotidiana. Esto le duele al enemigo y quiere evitar a toda costa que Unai esté con nosotros. Pero a pesar de todo, no pueden impedir que cuando la ocasión nos lo permite podamos darnos un abrazo, compartir nuestras ilusiones, infundirnos ánimos, e intercambiarnos unas miradas silenciosas llenas de ternura. Así rompemos el aislamiento y así les demostramos que a pesar de las mugas impuestas somos una nación.



# AUPA LAGUNOK!

*Parisen, Abenduaren 22an*

*París-Herrera aldibereko Martxa dela eta eskatu didate lerro batzu idazteko aitari buruz, nire asmoa ez da hitzaldi politiko bat egitea, baizik eta, islada sinple bat eskeintzea berarekin izan nuen harremanaz.*

*Azpimarratu beharrean nago, Migel, aita baino gehiago lagun handi eta berezia izan zela niretzako, nahiz eta azken lau urte hauetan berarekin ez izan kontaktu zuzen bat, beti izan dut oso hurbil bere laguntza morala eta bere elkartasuna, bai nirekin eta baita ere Estatu frantsesean gauden euskal preso politiko guztiekin.*

*Estatu espainoleko espetxe errepresiboetan zaudeten lagun guztiei, Herrerako Martxa honetan amnistiaren alde eta euskal preso politiko guztiekin elkartasuna adierazteko, esan, beste lagun bat gehiago galdu dugula eta zuek, ezagutu dezutenok borrokako urte hauetan, ikusiko zenuten bere jatortasuna eta bere emanaldia, bai zuekin eta baita ere bere herriarekin.*

*Etsaiari, saiatu dela adierazten prentsan eta nola ez komunikazio bide ofizialetan, Migelen hilketa bere axolagabekeriengandik izan dela. Esan, ez dela lehena izan, zoritxarrez. Bere aurretik beste zortzi lagun hiltzen utzi dituzte kondizio berean, ederki asko dakizuten bezela. Migelena, beste kasu bat gehiago izan da, «asesinatze kontsumatua» besteak bezelaxe, eta hau dena, desasistentzia sanitarioa osoa dagoelako.*

*Zigor politika hau, Mengele-Múgica eta bere akolitoarena, zoritxarrez oso ondo ezagututa da Euskal Herriangandik.*

*Mengeleren politika hau mugak pasatzen ditu eta bete betean sartzen da Estatu frantseseko espetxeetan, bertan gauden euskal preso politikoek desasistentzia orokorra sufritzen bait dugu (hau kasualitatera!).*

*Desasistentzia hau, maila txikiagoan, neure gorputzean bizi izan dut zoritxarrez orain dela denbora gutxi, Estatu frantseseko mediku sanitarioak diagnostiko oker bat egiteagatik.*

*Zoramena txiki bat gehiago, kide amankomunaren artean kolaborazioa eredua dagoela ikusteko.*

*Beraz lagunok, martxa aldibereko egun honetan espetxe ezberdinetara mugatik bi aldetara, Estatu frantsesean gauden euskal preso politikoek adierazi nahi dizuegu gure elkartasuna eta borrokarako prestutasuna eta bidaltzen dizuegu gure besarkada iraultzaile beroena, adore emanaz eguneroko borrokan sendo jarraitzeko gure herriaren askatasun nazionala eta soziala lortu arte.*

*GOGOR JARRAI LAGUNOK!*
*JO TA KE IRABAZI ARTE!*
*GORA EUSKADI TA ASKATASUNA!*

Mikel ZALAKAIN



## Euskadi Emergente

Cuando La Libertad bate sus alas
no hay fuerza humàna que impida
su despegue hacia el Infinito.
Podrán humillarnos, podrán enjaularnos,
pero nunca conseguirán arrancarnos
las alas de nuestra Libertad.

(Quisqueya,23/11/1990)